


## DÉPARTEMENT DES PYRÉNÉES ATLANTIQUES

# ÉLECTIONS LÉGISLATIVES DU 16 MARS 1986

Ezkerreko Mugimendu Abertzalea, EMA, popularen jendetza suharrena elkartzen duen mugimendua da.

Ezkerreko gobernuak azken lau urtetan argi eta garbi erakutsi digu bere xede politikoa zoin den, eskuinak bezalakoa : **Euskal Herriaren nortasuna ukatzea** eta berbidez abertzale mugimendua ahultzea eta suntsitzea.

ATXIK ! kanpaina ez da arazo guziei mirakuluzko aterabideak atxematea, baizik eta egun guzietako borrokak agertzea, Ipar Euskadi bizi dadin, bere nortasuna berreskura dezan, Euskadi batua helburu izanez. Bere programa : **bakoitzaren gaintasuna.** Bere alternatiba politikoa : borroka, guhauk eta Herria bizi dadin daramagun borroka.

ATXIK ! kanpaina, bertzeak ez bezalakoa, herrikoia baita. Ezkerreko mugimendu abertzalea, militante bakoitzaren lanaz sortu da, kantonamenduka, herrika, auzoka egin den lanaz.

*EMA rassemble la fraction de la population la plus dynamique : la gauche abertzale.*

*La gauche abertzale a senti la nécessité de s'unir pour réagir à la politique de droite ou de gauche de l'Etat français.*

*La politique des socialistes français comme celle de leurs prédécesseurs de droite a démontré leur volonté de* **nier toute affirmation du Peuple Basque** *voire d'éliminer le mouvement abertzale.*

*La campagne ATXIK ! n'est pas un catalogue de «solutions» miracles et démagogiques. C'est la mise en avant des luttes quotidiennes de tous ceux qui refusent la fatalité, qui bougent pour que le Pays Basque Nord vive, retrouve son identité et s'inscrive dans le projet d'Euskadi unifié. Son «programme» autant que ses moyens sont* **la prise en charge par chacun de ses problèmes**. *Son alternative politique c'est la lutte.*

*La campagne d'ATXIK ! est différente par son caractère populaire. La gauche abertzale s'est créée à la base par la mobilisation militante dans chaque canton, chaque village, chaque quartier.*

Gure Herria bizi da, Euskara eta Euskal Herria oraindik bizi dira. Gure izaitea itotzearen kontra, gure ekonomia ahularen itotzearen kontra, gure Herriaren hustearen kontra, gure borrokez ihardokitzen eta ATXIKitzen dugu.

Herria bizi dadin, sortu ditugu : Ikastolak, Gau Eskolak, Irratiak, Koperatibak, GFA-k, sindikatoak, antzerki-dantza-kantu taldeak...

Euskal Herriaren aterabide bakarra borroka hontan da : **bizi nahi dugu, horregatik gara borrokatzen.**

Sortzez edo hautuz Euskaldun, gure geroa eskutan hartu nahi dugu, harreman sozio ekonomikoak aldatuz, eta hortarako kontra podereak eraikiz, hauek baitira **herria bere gain izaiteko bide bakarra.**

Berehala ardietsi behar duguna :
— Euskal erakaskuntzaren legeztapena ;
— Euskal Herriko zerbitzu publikoentzat, diru publikoa ;
— Berreuskalduntze plangintza orokorra ;
— Turismakeria aterabide bakarra gelditu ;
— Lurra lan tresna eta ez tratu gaia ;
— Laborariek lanaren arabera ordainduak izan daitezen eta ez merkatuen arabera ;
— Ekonomiaren kinka tzarra eta berregituraketak ez dira langileen bizkar antolatu behar ;
— Lehentasuna industria eta laborantxa sailei eman behar zaie, bizi ekonomikoaren arrapizteko ;
— Errefuxiatu politikoen estatutoa, Euskaldunek Euskal herrian bizitzeko dretxoa ukan dezaten ;
— Preso politikoen estatutoa ;
— Amnistia ;
— Giza semearen libertate dretxo guttiengoak errespetatzea.

ATXIK ! - EMA bozkatzea ez da jauntto batzuen orde beste batzu emaitea.

ATXIK ! - EMA bozkatzea ezker abertzalearen borrokak sustengatzea da, gure bizia eta geroa gure gain har ditzagun.

*Notre pays vit encore, l'Euskara et l'Euskal Herria vivent encore. Nous résistons à travers nos luttes contre la disparition de notre identité, l'étouffement d'une économie fragile, le dépeuplement de notre Pays. Nous résistons à travers nos luttes pour que notre Pays vive et pour cela nous avons créé les Ikastolak, Gau-Eskolak, radios, groupes de danse, théâtre, coopératives, GFA, syndicats...*

*Pour le Pays Basque, la seule issue est dans ce combat :* **Euskadi résiste, Euskadi veut vivre !**

*Basques d'origine ou Basques par choix, nous voulons exister en tant que peuple maître de sa destinée afin que nous puissions décider librement de nos institutions. Ceci en changeant les rapports sociaux et économiques pour la mise en place de contre-pouvoirs qui sont des* **outils de prise en charge collective.**

*Dans cet objectif un certain nombre de revendications sont immédiatement nécessaires :*
*— Légalisation de l'enseignement en langue basque ;*
*— Financement public pour les services publics du peuple basque ;*
*— Plan global de rebasquisation ;*
*— Arrêt de la touristification comme unique axe de développement ;*
*— Terre outil de travail et non objet de spéculation ;*
*— Rémunération des paysans en fonction du travail, non des marchés ;*
*— Les travailleurs ne doivent pas être les victimes des restructurations et crises économiques ;*
*— Priorité à l'activité industrielle et agricole seule capable d'impulser une véritable dynamique de développement ;*
*— Statut de réfugié politique, droit pour les Basques de vivre en Pays Basque ;*
*— Statut de prisonnier politique ;*
*— Amnistie ;*
*— Respect des droits et libertés élémentaires.*

*Voter ATXIK ! - EMA ce n'est pas vouloir remplacer des notables par d'autres.*

*Voter ATXIK ! - EMA c'est soutenir les différentes luttes de la gauche abertzale pour la prise en charge collective de notre avenir.*




# BOZKA EMA!



# VOTEZ EMA!

l'imprimerie artisanale, 14 rue pannecau, bayonne, r.m. 319 704 490